# BIOTZ-BEGIETAN

## Olerkiak

LIZARDI

(Poesías vascas, con traducción castellana)

Lizardi'tar X

Aure-itza "Orixe"k




BILBAO
Imp. y Lit. E. Verdes Achirica
1932

*Opari:*

*Maite: bion aur, il ta bizien, oroiz.*

BIOTZ-BEGIETAN zatzaidate sortu:
biotzeanago batzuek; besteak
betsein-betseñotan... Biotz-gabe ta itsu,
nork, izan ere, bil olerti-loreak?...

EN EL CORAZÓN Y EN LOS OJOS
habeisme nacido: unas muy en el
corazón; otras muy en los ojos... Sin
corazón y ciego ¿podría alguien cortar
flores de poesía?

## IRAKURLE:

*Labur adierazi nai nizuke, liburu oni dagokionez, emengo olerki guzien iritzia· Olerkari edo diralako gizasemeetaz luze mintzatzea, olako oriek laiño legunez estaltzea, askori eŕez bezain neke zait neri beintzat. Erabateko gauzak ondo esatea, batez ere yakintza-arauz esatea, nornairen mende ez dago; baiña nolabaiteko gauzak izyarioka esatea, nork ez dezake? Olerki gauz oetan, bakoizka ta zeazkiro gauzak adieraztea da beaŕenik eta zailenik. Beraz, saŕera-itzok alper ez izatekotan, asi nadin olerki bakoitzaren iritzia ondozka azaltzen.*

*Onela diote nik olerki bakoitzari ezaŕi nition oarkizunak:*

# AL LECTOR

*Quisiera, lector, darte a conocer brevemente, cual compete a la calidad de este libro, mi juicio acerca de todas las poesías que contiene. Hablar largo y tendido acerca de esos individuos que llaman poetas, envolverlos en halagadora nube, sería para mí tan difícil cuan facil suele ser para muchos. El decir generalidades bien dichas, sobre todo filosóficamente dichas, no está al alcance de cualquiera; pero ¿quién es el que no puede expresar con profusión de palabras ciertas generalidades?*

*Lo más preciso y lo más difícil al mismo tiempo en estas cosas de poesía, es descender al dato particular y al pormenor minucioso. Según esto, para que estas palabras de prólogo no resulten ociosas, co-*

Yaun eṙukioṙa — *Erderatik itzulia, dio berak. Gogai edeṙa du erderazko amalauko onek, baiña euskal-belaṙiendako gogor-antxa dirudit.*

Oia — *Yatoṙa, gauzak berak dakaṙena. Egi-ziṙara sartzen du barnean. Ba du gautaṙen aurka ziri zoṙotza:*

Ai nolako zoroak
gauez kalerik kale
ibil oi diranak!
Arkiko âl-dituzte
asun miñez yosirik
iñoiz beren oiak!

Mendi-gaña — *Aski polita. Olerkari on batek bere dunik uka ez lezaken adiñakoa; baiña liburu onek olerki aulik ba lu, nere ustez aulena.*

Zeru-azpia — *Xoragaṙia. Prantzesetik mamia dun aṙen, euskal-axal goxoa du.*

Aldakeri — *Idurimen yostanaia ta adi-*

*mienzo a exponer el juicio de cada poesía por su orden.*

*Las observaciones que tengo puestas al pie de cada una son como siguen:*

**Dios de piedad!**—*Traducida del español, como dice el mismo autor. Contiene un hermoso pensamiento éste que en castellano es soneto, pero se me hace un tanto duro para el oído vasco.*

**La cama.**—*Natural, brota espontáneamente del asunto. Causa en el ánimo gran impresión de realidad. Encierra una punzada satírica contra los nocherniegos:*

«Valientes majaderos esos que de noche van recorriendo calles! Así den cualquier día en una cama llena de picantes ortigas».

**Cumbre de montaña.**—*Bastante bonita. No es como para que un buen poeta se desdeñe de hacerla suya; pero, si este libro tuviera alguna poesía mediana, esta lo sería a mi juicio.*

*men zailua au egileak. Olerki au bulkoz yoria ta gizon oartuarena da.*

Xabiertxo'ren eriotza —*Bikain bikaiña. Aita siñiste berodunak, semetxo yaioberia garai artan il zaiolarik,* yaiotza'*taldeari eratxikitzen dio:*

*(Ataritik)*— Etxeko-andre ona
kantatzerik nai?
Belen-zaleak gera,
sari-ustez beteak
zure zai...
—Biyoaz! — Ez maitea,
begira zaien...
Gurea iñoiz, azita,
oiek bezela ibiltze'
âl uken!

*(Ataritik)*— Etxeko-andre ona,
abesterik nai?
Gabon-zaleak gera,
ezin-etsiz beteak
zure zai.
—Zuzen diok. Aur onak
onetsi bitza!
Sartu, mutil, ederok,

El revés del Cielo.—*Encantadora. A pesar de que la idea está tomada del francés, según declara el autor, lleva vestido de sabor vasco.*

Veleidad. — *Imaginación juguetona y ágil ingenio demuestra el autor. Esta poesía es muy nutrida en ideas y digna de un gran observador.*

Muerte de Xabiertxo.—*Excelente. Un padre de profundas creencias agrega a la comparsa de niños* nacimienteros *su recién nacido y muerto en aquella fecha.*

«*(Desde el zaguán).* Oh, buena «etxekoandre»: nos dejarás cantar?... Somos «beleneros» que, llenos de la esperanza de tu aguinaldo, te aguardamos».

«*(Ella)*—Váyanse!»

«*(El)*—No, querida... Míralos: igual que ellos anduviera el nuestro algún día, una vez crecido!

seaska-alderaturik
yaiotza.
Sartu, ta yo beldufik
gabe. Gaxoa
lotan dezute, bañan
otsak astindu-gaitza
du loa.
Yo, bai, gaur baita Aur ona
yaiotzekoa!
Yaiki, biotz autsia,
pozezko yaia baituk
gaurkoa.

*Au idatzi digunak ba du biotzondo.*

**Neskatx urdin-yantzia** — *Goxoa, eŕexa, ugaria, zailua, laisteŕa.*

**Bultzi-leiotik** — *Ziŕara ematen du egiaren egiz. Gaiari dagokion bezain zailua ta laisteŕa da.*

**Paris'ko txolaŕea** — *Oartua ta ziŕarakoŕa ageri zaigu ontan ere. Izkuntza mendean du, euskeraz iñork ba. Edeŕaren susmo bizi bizia du. Zenbait leŕo erakus-*

«*(Desde el zaguán)*. Oh, buena «etxeko-andre»: cantamos?. . Somos «nochebueneros» que, sin perder nuestra esperanza, te aguardamos».

«—Dices bien. Que el buen Niño los bendiga! Entrad, muchachos hermosos, y a la cuna acercad vuestro «nacimiento»..»

«Entrad, y tocad sin temor: el pobrecito duerme, pero su sueño es de los que difícilmente sacudirá el ruido».

«Tocad, oh, sí, que hoy ha de nacer el buen Niño! Y tú levántate, roto corazón, que es fiesta de júbilo la de hoy!

*El que esto ha escrito revela vena de lírico.*

**La doncella vestida de azul.**—*Sabrosa, fácil, nutrida, ágil, rápida.*

**Desde el tren en marcha.**—*Es de las que impresionan por su verismo. Es ágil y rápida, coincidiendo con la materia.*

**Gorrión parisién.**—*Se nos muestra observador e impresionista igualmente en*

*buruz aldatu nai ba nitu, guzia alda nezake.*

Otartxo utsa — *Selgas'en* La cuna vacía *gogora dakar idazpuru onek, baina ez olerkiak. Meaxka da, ez ordea belaxka. Beti dugu gizaki ta beti euskotar gure Lizardi.*

Agur! — *Buruzkoegia dirudit. Ba ditu olako beste zenbait ere. Biotzaldiari noizpenka indaŕa ken lezaio.*

Biotzean min dut — *Bere aldikoa da. Emen agertzen ditu doairik garaienak batean. Guzi guzia alda genezake, baiñan ikus leŕo ok:*

Ol bat yaso ta ikusi
dut musu ximela:
paŕe-antxa, bizirik
ba lirau bezela:
(Ots, ots,
ler adi, biotz).

*ésta. Domina el lenguaje, si alguien en vasco. Tiene muy viva impresión de lo bello. De querer copiar algunos versos como ejemplo, tendría que copiarla toda.*

El cestillo vacío.—*Por el título recuerda* La cuna vacía, *de Selgas, pero no por la poesía. Ella es delicada, pero no blanducha. Nuestro Lizardi siempre se nos muestra varonil y vasco.*

Adiós!—*Me resulta un tanto en exceso intelectual. Tiene algunas otras que hacen la misma impresión. Pudiera restar a veces fuerza a la parte afectiva.*

Duéleme el corazón.—*Admirable. Aquí demuestra unidas sus cualidades más sobresalientes. Pudiéramos trasladarla toda, pero véanse estos versos de muestra:*

«Levantaron una madera y vi tu rostro arrugado;
sonreía como si aún conservase vida...
(Resuéname y quiere estallarme el corazón...)

Ordun izar bat biztu
du nere gau beltzak,
begioi malko ixil bat
dardarka darite.
Noizbait itxaro-kabi
biur dan biotzak:
(Ots, ots,
yauzika, biotz).

Agur, oiuka dio,
gorputz ximur maite:
agur, amonatxoa.
Egun Aundirarte!

**Zuaitz etzana** — *Bikaina, oartze aundikoa. Zugatzaren bizitza yator yalkia dago. Au egin duna ez ote litzake antzerkigile ere? Bizitzaren eta giza-biotzaren zizkuak ezagunak edo ditu.*

**Urte-giroak:**

*I* — **Bizia lo** — *Ugaria, oartzez yauntzia, berekia, egitsua. Ni bezelako baso-semeari ere ozki eragiten dio.*

Entonces mi noche oscura encendió una estrellita.
Derramóseme temblando, de los ojos, una callada lágrima. Y el corazón, convertido al fin en nido de esperanza:
(Resonando, resonando y saltando...)
Adiós! (dijo a gritos) Adiós, pobre cuerpecillo querido!
Adiós, abuela: hasta el Gran Dia!»

*La traducción es pálida.*

**Arbol yacente.**—*Superior, de mucha observación. Se narra con mucha propiedad la vida de un árbol. El que ha escrito esto ¿no valiera también para autor de teatro? Parece conocer los secretos más recónditos de la vida y del corazón humano.*

**Paisaje de las estaciones:** *I.*—**La vida duerme.**—*Ubérrima, repleta de observación, original, de mucha verdad. Aun al hijo de selva, como es el que esto escribe, le produce gran impresión.*

*II* — Sagar lore — *Ar̃ekoaren kidekoa, iduripenez aberatsa.*

*III* — Baso itzal — *Lenaren antzekoa. Tolosa'ko Olerti-yaiean sariztatua. Lau urtaroeri dagozkion olerki oetan, gizon umoa ta agoxuria agertzen da Lizardi.*

*IV* — Ondar gor̃i — *Ausaz, oberena. Lau urtaroen zitua berekin du. Azken zatia biotz-ixuria du, sendoro ordea:*

Ta zuek nora, txoriok, saldoka
zoazte, iraduz ur̃undu-bearka?
Adiskide Ur̃etxindor il zaizute
ta aren ilkizunetara
—egoak ikara—
berandu-beldur̃ak al zaramate?
Oi, zein dan ituna
bêra-bear au!
Nik ez nai eguna
biurtzerik gau!
Giroen argia galtzerakoan
lên-oiartzuna dut ozen gogoan
Iru giro izanok, nik dei ta atozte,
nork zeren saria ekardazute:

*II.*—**Manzano en flor.**—*Hermana de la anterior, rica en imágenes.*

*III.*—**Bosque umbrío.**—*Parecida a la anterior. Premiada en el concurso poético de Tolosa. En estas poesías que tienen por objeto las cuatro estaciones se revela Lizardi hombre maduro y de exquisito gusto.*

*IV.*—**Playa bermeja.**—*Es tal vez la mejor. Encierra el fruto de las cuatro estaciones. El último fragmento es efusivo, pero de una efusión digna:*

«Y vosotros, pájaros, a dónde vais por bandos, con ese urgente impulso de alejamiento?... Es que ha muerto vuestro amigo Ruiseñor y, estremecidas las alas, os empuja el temor de llegar tarde a sus exequias?

Cuán triste es la inexorable necesidad de caducar!

Ojalá que el día no se trocase en noche!

Al extinguirse la luz de las estaciones, resuéname en el alma el eco de lo pasado. Vosotras, mis tres estaciones que fuisteis, volved por mí

batak itxaro, besteak berbizte;
irugaŕenak bizitza-indar bete.
Oro bear zaituzte ene biotzak,
lên-min baidamada neurtitz zâŕen otsak!

(Negu). . . Ikus bezat, Yauna, bein ta beŕiro.
otalore eziñegona...

(Udabeŕi). Bekusat sagasti gazte elurgiro,
udalen sort-oge dana.
Ikus bitzat arako irusta-saiĺak
eskuan ditutela ardo-txanbiĺak.
Entzun bezat iñoizko olerkaria
zelaiean baitzun lur-yauregia...

(Uda). . . . Yainko-muño-gañetara baño lên
(edeŕa baita bizia!)
uŕezko itsaso bebilt urduria
Itzal dudala laguntzaiĺe lerden.

(Udazken) Ta udazken-atsaŕeko goiz batean
esnatu nadi Yainkozko betean!

*Aŕigaŕia da zati au. Nik ezagutzen dudan lirikurik aundienaren zatirik edeŕenari batere ez dio zoŕik.*

**Eusko-bidaztiarena** — *Izkuntza pinpirina, aundikitaŕa, zarpazu esan dioten*

llamadas, trayéndome cada cual vuestro presente: la una esperanza, la otra resurrección; la tercera, plenitud del vivir. De todas vosotras necesita el corazón, pues la música de mis antiguos versos me causa nostalgia de lo pasado.

*(Invierno...)* Haced, Señor, que una y otra vez vuelva aún a ver la flor impaciente del argomal...

*(Primavera...)* Y el joven manzanal como nevado, cuna de la primavera. Y aquellos tréboles que en las manos sostenían ánforas de vino. Vuelva a escuchar al poeta de marras, aquel que tenía en la pradera su térreo palacio. .

*(Estío...)* Antes que las cumbres gane de los divinos collados (es tan hermoso vivir!), sobre el áureo mar hirviente vuelva a navegar, llevando por gracil compañera a Sombra.

*(Otoño...)* Y en una mañana de principios de Otoño, despierte en la plenitud de Dios!»

*Este ės un trozo maravilloso. En nada cede al fragmento más bello del mejor lírico que conozco.*

**Canción del vasco viajero.**—*Lenguaje elegante, aristocrático, adornado con las*

*andere aberats batek aterako luken yantziz yantzia.*

**Asaba zâřen baratza** — *Ugari guzizkoa, besteak bezela.*

**Izotz ondoko Iguzki** *ta* **Gure mintzo** *azken-orduan egiñak ditu. Landuak noski, ez orde bear bezain legunduak. Itz beři ta aditz-yoku beři zenbaitek olerti-guriña kendu egiten diote. Egi egiz dio izkuntzari buruz:*

Muinki dut estu nere eder
besoetan, ta atsa yaurtiki,
ta ura bai, egin zan aoan abesti.

*Oetxek dituzu Lizardi'ren olerkieri ondozka ezaři nitien oarkizunak. Ez diet ezer kenduko, ez eratxikiko, irakuři-ala tenengo nere iritzia sendotu egiten baitute.*

*Erabat esateko: bulkoz, iduripenez, biotzondoz, agoxuriz izkuntzaz, oso guzizkoa dugu Lizardi. Euskera zar ezagunbageak dun muña atereaz, lirikarako aukerako-*

*galas que una dama acaudalada vistiera si la hubieran motejado de andrajosa.*

**Huerto de mis antepasados.**—*Nutridísima como todas las demás.*

**Sol sobre el hielo** *y* **Habla nuestra** *las ha compuesto a última hora. Están bien trabajadas, pero les falta cierta suavidad. Algunos neologismos y neoflexismos o flexiones nuevas, les quitan unción poética.*

*Con toda verdad dice hablando del idioma:*

«Estreché apasionadamente en mis brazos a mi hermosa y lancé el aliento; y aquél, si se hizo en mi boca canción».

*Estas son las notas que yo tenía puestas una tras otra a las poesías de Lizardi. Ni quitaré ni añadiré nada, porque a medida que las he releído me han confirmado en la primera impresión.*

*Para decirlo en resumen: por sus ideas, imágenes, sentimiento, buen gusto, lengua-*

*ena dala garbi adierazi digu. Ainbeste esangai, ainbeste itz doi erabiltzen ditu; kirioz ta odolez yantzia da; euskera erpineraiño landu digu. Gurean orainarte ez du izan kiderik, nekez duke garaitzailerik.*

*E-tzazula eriosuar irakur emengo olerkirik, ahapaldia arnas batez asi ta buka; ez ta, agiz, leŕo osoka; leŕo erdika, laurdenka, itz bakoizka, gauzak eska dezan araura baiño. Mandoaren ur edateari baiño oiḻoarenari areago zagozkio. Edeŕak uki-bera ba zera, miazta ezazu astiro egiḻeak ain begiratuki bildu digun ezti gain gaineko au.*

ORIXE.

*je, Lizardi es un poeta de cuerpo entero. Extrayendo a nuestro viejo euskera el meollo que contiene, nos ha demostrado palpablemente que es tan apto como el idioma que más para la lírica.*

*A tantas ideas, tantas palabras justamente. Está dotado de nervio y de sangre; ha cultivado el euskera hasta el ápice. Entre nosotros no ha tenido aún semejante, y difícilmente tendrá quien le supere.*

*No leas precipitadamente ninguna de las poesías de este libro, leyendo de una alentada cada estrofa, ni comunmente por versos enteros, sino por hemistiquios, cuartos de verso, palabras aisladas, como lo exija cada cosa. Imita más bien el beber de la gallina que no el del mulo. Si eres sensible a lo bello, paladea pausadamente esta excelente miel que con tanto esmero ha fabricado el autor.*

*ORIXE.*

# Yaun eŕukioŕa

(AMALAUKOA)

*Gazteleratik itzulia*

Txeŕen'ek lardaskatuzko loidi iguingaŕian
naŕas dut gogoa: zere iduriz sorturiko
anima garbia: zere eskuek yantziriko
soñeko zuria... Yauna, ogen egin nuan!

Lor-atsekabe laŕiak sortu zitun nigan
ogenak; miñago baita, eztizkoa baño.
Belduŕez ninduzun, Yauna, banekialako
tximist'—ortzirien yabe zu zeundela goian.

Ta, zure zigorbidezko oñaztaŕi laŕia
usterik, yo dizut begiz ortzia, izu-izuan...
Etzenidan, Yainko on oŕek, eguzkia yaurti!
Etzenidan uka ere beroŕen argia!
Eŕukizko izpia zeneriodan, artean,
ezin-agortuzko Maitasun-Ituŕi bizi!...

1917.

# Dios de piedad!

(SONETO)

*(Original del autor)*

Pequé, Señor, pequé; arrastré en el cieno,
del alma que me diste la hermosura:
manché tu imagen en la charca impura
donde vertió el infierno su veneno.

Trajo el pecado, de zozobras lleno,
a mi alma su corte de amargura;
temí, porque sabía que en la altura
morabas Tú dominador del trueno.

Y, esperando tu rayo formidable,
volví los ojos con espanto arriba;
seguía el sol su vía, imperturbable,
y el cielo azul su luz me regalaba...
Luz de piedad aún sobre mí manaba
de Amor la Fuente inextinguihle y viva!

1916.

# Oia

Neke-sendalaria,
buru-argitzalea,
lanaren saria...
Amestegi guria,
naigabien azkaia,
nagien nausia.

Bitez agur nereak,
apalonduon beintzat,
guztiak zuretzat.
Ta «aita-gure» bat ere
biyoa, zu asmatu
zinduanarentzat.

Baña... Lasatu nadin
orain, «aita-gure»'ka
eraso baño lên,
yaun zintzo oren baimenaz,
mordoka datozkidan
neurtitzok esaten...

---

Apaldu det oparo.
Betazalok, otoika,
eskatzen zaudate.
Aurean zu, zabalik,
elura ainbat zuria,
begiok zakuste.

# La cama

Médico del cansancio, iluminadora del entendimiento, premio al trabajo... Soñadero sabroso, lenitivo de penas, dueña de los perezosos.

Sean mis elogios – por esta nocturna sobremesa, al menos – todos para tí. Y vaya también un «padrenuestro» en sufragio de tu inventor.

Pero, no... Desahógueme ahora, antes que la emprenda con los «padre-nuestros». Previa la venia de ese honrado señor, dé suelta a tanto verso como, arracimado, me viene a la boca.

---

Héme aquí, cenado opíparamente. Los párpados, cama mía, te añoran suplicantes... Ante mis ojos muéstraste abierta, blanca como la nieve.

Sartu ditzadan lênen
estalkiok azpitik,
dagokion neuŕiz;
oñik irten eztaidan
gaberdian – oi baitu! –
lotsagabekeriz.

*Apatx,* orain!... Biyoaz
oñetakuok gora,
abea yo arte:
nere pozaren beŕi
auzo goi ta bêkoak
ikasi bezate!

Txamaŕa kendu, bota
galtzok ere: ez atseden...
Oŕenbeste neke!...
Zûŕagoak izanak
dituk ene guraso
Adan eta Ebe!...

Noizbait! Gerturik nago.
«Aitaren» egin, eta
yo dezadan murkil.
Bat, bi, iru, lau..., aguro!,
negu-gauaren otzak
ez nazan bertan il.

Comencemos afirmando estas mantas por bajo del colchón en la prudente medida; no sea que luego, a media noche, se me salga desvergonzadamente, según suele, alguno de los pies.

¡Ajajá!... Sentémonos ahora. Vuelen por el aire mis zapatos, hasta dar en el techo... Que sepan de este gozo mis vecinos: los de arriba y los de abajo.

¡Ahí va la americana! ¡Ahí, los pantalones! ¿Quién dijo descanso? ¡Qué fatigas! ¡A fe que tenían más juicio nuestros padres Adán y Eva!

Mas ¡por fin! Héme presto. Zambullámonos, después de santiguados. A la una, a las dos, a las tres..., pronto!, antes que me acabe el frío de esta noche invernal!

---

Ora baruan, yaunok,
maindire leun artean
bilduta, buru-oin.
Sarerako otz-ikara,
banan, samurtu arte,
aren, pixkat itxoin.

Oraintxe, ba, mutura
zerbait atera daiket,
berketa-yarai.
Zu goratzen, maitea,
logurak autsi arte
ez dut ixildu nai.

Ai, nolako zoroak
gauez kalerik-kale
ibil oi-diranak!
Arkiko âl-dituzte
asun miñez beterik
iñoiz beren oiak!...

Atean aize latza
dabil, asere... Noski!:
oirik ezpaitauka.,.
Leioan txingor-otsa
da, neri loa, nonbait,
galerazi-bila.

Héme aquí ya, señores, en suaves sábanas envuelto de la cabeza a los pies. Por favor, aguárdense un poquitín, a que haya vencido este escalofrío de la entrada.

Ahora, sí... Puedo ya asomarme un poco y continuar la conversación. En ensalzarte, querida mía, no ceje yo mientras el sueño no me rinda.

¡Valientes majaderos, esos que de noche van corriendo calles! ¡Así den cualquier día en una cama llena de picantes ortigas!

Fuera, el inclemente viento paséase de mal humor... Claro!, como que no tiene cama! En la ventana suena el granizo, pensando por lo visto estorbarme el sueño...

Lan gaitza, gaitzik ba-da.
Ateko giro txara
lotarako onena;
seaska ustu genduan
aur samur-azitxuon
*lo-lo* biguñena.

Biar?... Gogapen txarok
urun! Egun banari
gau bat daraikio
egiñaz atsartzeko,
ez eginkizunaren,
orde, kezkatzeko.

Ta .., irakurle maitea,
laburerako oraintxe
beriketan nuzu...
Begiak itxi zaizkit,
burutzar au moteldu...,
arnasa... ba... kan... du.....

..... Ames dagit, basoan
il nauela, pareaz,
maitagari batek,
ta, gozorik, ileta
abesten didatela
bereun mila lorek.....

¡En mal empeño se ha metido! Cuanto peor tiempo fuera, mejor para dormir... No hay canción de cuna semejante para los niños creciditos que ha tiempo la abandonamos.

¿Mañana?... ¡Quita allá, mal pensamiento! A cada día síguele una noche para que se descanse de lo hecho; no para que nos inquietemos pensando en lo por hacer.

Pero..., caro lector..., figúraseme que tienes ya conversación para poco... Es que se me cierran los ojos, la cabezota se me entontece, el respirar... re – tár – da – se – me. . . . .

. . . . . Y sueño... que en el bosque un hada matóme con su risa, y que doscientas mil flores cántanme dulce funeral...

..... Ames dagit nautela
tximiŕitek eortzi
abaraska baten,
ta ilobia, lasaki
ta ixilka, ari naizela
paŕa-paŕa yaten...

..... Ames... Baña, ¿zer dantzut?
Irakurle guztiok
zuŕungaka lorik?
Nere neurtitzok oŕein
lo-erazle bizkoŕak
uste ez nun ziranik!

Beraz, gabon, gazteok...
Baña... nere buru au,
yas...! nola burutu?...
Oi-asmatzalearen
onez agindutako
«Aita-gurea» âztu!

Gizagaxoa..., noski,
on-utsa bide-zanez,
zeruan âl-dago!
Nere «aita-gurien»
beaŕik, beraz, ez du,
alegia, izango.

. . . . . Y sueño que las mariposas me enterraron en un panal de miel, y que yo, con mucho desahogo y disimulo, estoy engullendo mi propio sepulcro...

. . . . . Y sueño... Pero, ¡eh!, ¿qué escucho?... ¡Todos mis lectores roncan profundamente!... Nunca en mis versos sospeché tan eficaz narcótico

Así, pues..., ¡adiós, buena gente!... Pero... ¡recontra!, ¡qué cabeza esta mía! ¡Olvidábaseme el «padrenuestro» que prometí en sufragio del inventor de la cama!...

Bien que... es de esperar que el pobrecillo..., con lo bendito que debía de ser, goce ya de la gloria. En cuyo caso, ninguna falta le hacen mis «padrenuestros».

Gauzok ala dirala,
laga dezaket «aita-
gurea» biarko...
Atean euri-otsa...,
aize-zotin luzeak.....
Agur... ¡Da... gi... dan lo... o... o.....

1919



Dejémoslo, pues, para mañana... Fuera resuena la lluvia. Y los largos gemidos del viento... Vaya... Adiós... Dur – maaa – mooos.....



# Mendi-gaña

Maite ditut gaîuřak
argiak ez beste...
Ai, egaztia ba'nintz,
gañik-gain nenbilke!

---

Oi, udabeři-goizez
mendiaren gaîuřa!...
Oi, aren ametsezko
zorakortasuna!...
Zein ezkutuzko indařez,
zein atseden-egařiz,
zein gorago-yoranez
narakark igana?...

Egiz, maitagařiak
dituk ire basotan?...
egiz duk arnaskai bat
ezilkortzen duna?...
egiz, eguzkiaren
lêndabiziko muñaz
sortzen duk zorunaren
lore ezezaguna?...

# Cumbre de montaña

Amo a las cumbres más que las ama la luz. Oh!, si yo fuese pájaro, siempre volara de cima en cima!

---

Cumbre de la montaña en mañana de primavera... ¡Qué embriaguez produces, de ensueño! ¡Con qué misteriosa fuerza, con qué sed de descanso, con qué ansia de más arriba me atraes hacia tí!

¿Es verdad que tienes hadas en tus bosques?... ¿Y que posees un aire que hace no morir?... ¿Y que al primer beso del sol produces la flor ignorada de la felicidad?...

Nik amestan bezela
ote-aiz, mendi-gaña?
Goi-yauregiko mala?
Gotzonen urbilgo?...
Egiz, Yaungoikoaren
esku ta aunditasuna
ote-dituk or goitik
sumatzen bertago?...

Ire goi urdiñaren
uŕe lañotsupean
bêko txikerkerion
azkaia ba'legok,
aŕen, aiskide uŕuna,
otoi, mendi maitea,
negar-aran bêltz oni
kendu nazakiok!

---

Maite ditut galuŕak
argiak ez beste...
Ai, egaztia ba'nintz,
gañik-gain nenbilke!

1920.

¿En verdad eres tal, oh cumbre de la montaña, como yo te sueño? ¿Escalón del celeste alcazar, cercanía de los ángeles? ¿En verdad desde tu altura se sienten más próximos el poder y la grandeza de Dios?...

Sí, bajo el oro brumoso de tu cumbre azul, por ventura existe algo que haga olvidar estas miserias de acá abajo, oh, amigo lejano, monte querido, por piedad arráncame a este oscuro valle de llanto!...

---

Amo a las cumbres más que la luz las ama. ¡Oh, si yo fuese pájaro, siempre volaría de cima en cima!

# Zeru-azpia

*Pantzeratik itzulia, mamiz.*
(Besse de L.)

I

Esan amatxo: aingerutxoak
egoa uŕezko ba-dute,
zeru urdiñean uŕe-dirdira
nik nola ikusten ez-ote?...

Paŕe gozo bat amak eginda,
auŕari ala diotsa:
– Bêtik dakusgun urdiña zeru-
-azpia baizik ezpaita.

– Ene, ba!, azpia – mutilak dio –
oŕein edeŕa dalarik,
nolakoxea ote-da, gero,
zerua goi-alderditik!..

II

Gautu zanean, ortzi zabala
bare-ozkarbi zegoen,
ta izar argien zilar-begiak
auŕari par-zegioten.

# El revés del cielo

*Traducción libre del francés.*
(Besse de L.)

I

Dime, madrecita: si es verdad que los ángeles tienen de oro las alas, ¿cómo es que yo no las veo brillar en el azul del cielo?

La madre, sonriendo dulcemente, contestó al niño así: – Es porque ese azul que vemos desde aquí no es sino el revés del cielo.

– ¡Ah!, pues entonces – dijo el niño – si el revés es tan hermoso, ¿qué será el cielo por el otro lado?

II

Llegada la noche, el firmamento se mostraba plácido y sereno, y los ojos argénteos de las estrellas sonreían al infante.

Aur-kezka oro amets eztitsu
biur oi-diran garaian,
auŕak, amaren biotz-alboan,
beŕiro onela ziotsan:

– Zerua azpitik oŕein edeŕa
dalarik, amatxo maite,
ai nere poza, zeru-gainkia
ikustera âl-ba-ningoke!...

III

Auŕaren naia zeruratu zan,
(alatsu otoitz garbia),
ta aingerutxoak eska zioten
Yaunari lagun beŕia.

Eguzkiaren uŕezko yaia
beŕiro izeki zaneko,
begia itxirik zeukan aurtxoak
zeru-azpia ikusteko.

Seaska-aldean ama gaxoak
otoi-zegian, negaŕez,
semea igoa baitzun, zeruko
goikia ikusi-beaŕez.

1925

Y a la hora en que las inquietudes infantiles ceden su lugar a sueños dulcísimos, el niño, muy junto al corazón de su madre, decíale nuevamente:

—Madre, ese cielo que es por debajo tan hermoso, ¡cómo me gustaría subir a verlo por encima!

III

El deseo del niño ascendió a lo alto, como las oraciones puras, y los angelitos pidieron a Dios un compañero nuevo.

Y, cuando el sol hubo otra vez encendido su áurea fiesta, el niño tenía cerrados los ojos al reverso del cielo.

Junto a la cuna, la pobre madre oraba llorando, porque habíasele escapado el hijo, en su empeño de conocer el anverso del cielo.

*Traducción literal de la poesía original*

# EL REVÉS DEL CIELO

I

—¿Por qué—dice un niño—no veo relucir en el cielo las alas de oro de los ángeles radiantes?...

La madre respondió, con una dulce sonrisa; —Hijo mío, lo que tú ves no es sino el revés de los cielos.

Y el niño exclamó, elevando su cándida mirada hacia las divinas bóvedas del palacio eterno:

—Pues que el revés del cielo, es ¡oh! madre, tan límpido, ¡qué bello debe de ser el otro lado del cielo!

II

Cuando sobre el vasto horizonte la noche hubo llegado, a la hora en que todo pesar se adormece en un ensueño, la mirada del niño dirigióse al firmamento y contempló el azul, ornado de perlas de oro.

Las estrellas formaban en el cielo una corona, y el niño murmuraba, junto al seno materno: — Pues que el revés del cielo rutila tan dulcemente, ¡qué diera yo por ver el otro lado del cielo!

III

El deseo angelical de aquel alma infantil subió como el incienso a la celestial morada. Y cuando el sol doró la colina, ya el niño no estaba allí para contemplar el día.

Junto a una cuna, una mujer lloraba y oraba, porque su angel había huído hacia el mundo inmortal y, franqueando la barrera del revés de los cielos, contemplaba el otro lado.

# Aldakeri

## Maitezko ipui minkatza

I

Leioa. Kaiola, bertan.
Ur̃ezko ariz lotuta, pozik, txoria:
ez margo, ez eztar̃ia:
eder̃ik gaxoa nekez ezertan...

Itzalgar̃i matsondoa.
Ikusgai, ber̃iz, ibai, mendi, baso, zelai,
ta udaren ur̃ea non-nai...
Bazun zerk aska-zaletu gogoa!

Maitiar zitun txolar̃e
biur̃iak, maiz; iñarak aiskide, ber̃iz;
ta ir̃aka yoan-etor̃iz,
iluntzeak ditun sorbeltzak ere.

Txolar̃eak diotsana:
«Oi, ene lagun gaxoa! Lotu-gaberik,
»eure mai gizen bera nik!...
»Oi, zein maite dudan askatasuna!...»

# Veleidad

## Cuento de amor, amargo

I

Una ventana, y en la ventana una jaula. Por áureo alambre aprisionado, feliz, en la jaula, un pájaro. Ni por el color, ni por la voz descuella; dudo que el pobre sea agraciado en nada.

Tiene la sombra de una rama de vid, y ante la vista un paisaje de ríos, montes, selvas, prados...; y el oro del estío por doquier. ¡Había allí, por cierto, de qué aficionarse a la libertad!

Eran con frecuencia comensales suyos los traviesos gorriones; tenía la amistad de las golondrinas, y aun la de esos vencejos que, en el anochecer, van y vuelven girando.

Y decíale el gorrión: —¡Ah, desdichado amigo mío! Yo no sufro prisión, y gozo sin embargo de tu mismísima regalada mesa... ¡Cuán amable es la libertad!

Iñarak: «Ene laguna,
»eŕukaŕi aiz; ezpaituk iñon kabirik
»ume laztanek beterik!...
»Oi, zein maite dudan askatasuna!...»

Sorbeltzak: «Ez duk biguna
»ire zoria; begitu nazak, emen-or,
»laister bai zabalak mozkor!...
»Oi, zein maite dudan askatasuna!...»

Txoriak: «Ez zuen ele
»maitekoŕak, ez emendiko ikuskizunok...,
»iñork ez ezerk, lagunok,
»ezin naute egiñen askatu-zale».

* * *

Leiora, bat-batean, nor?...
Edeŕ-ametsik eziñena, aragituta!
Neskatxak: «Ega», dio, ta,
kaiola zabalduz: «maiteñoa, ator...»

Aren begikun gozoa!...
Burni-tartetik giltzape beltzean sartzen,
askatasun-egunaren
uŕatzea ez dan bezelakoa...

Y la golondrina: – Compañero, a piedad me mueves, tú que no tienes un nido lleno de entrañables pequeños. ¡Oh, no sabes cuán hermosa es la libertad!

Y el vencejo: – Dura es tu suerte. Contémplame a mí, en perpetuo vuelo, ebrio de movimiento y de espacio... ¡Ah, cuán apasionadamente amo la libertad!

Y respondía el pájaro: – Ni vuestras cariñosas instancias, ni esa hermosura que mi vista alcanza...; nadie ni nada, amigos míos, será poderoso a hacerme añorar la libertad.

* * *

¿Quién de pronto viene a la ventana?... El más inverosímil ensueño de belleza, hecho carne... Y dice la muchacha: – Vuela. – Y, abriendo la jaula: – Ven, queridito...

¡Qué dulce era su mirada!... No lo es más la aurora del día de la libertad, al penetrar por entre las rejas de la lóbrega prisión...

Txoriaren poz-ikara!...
Ur-ontzitxoan murgildu ta astinduz-gero,
maitetasunaŕen ero,
badoa dei-dion ao goŕira.

«Ega adi, maiteñoa, arin,
»neri biraka; eskuaz bainegok erne...
»Laisteŕago! Oŕelaxe! Ene!
»Ukaldia yaurti, ta atzitu ezin!»

«Gaiztoa! Geldirik! Ator!...
»Nerea aiz noizbait! Laztan bat: orain bestea;
»yan nai aut, ene maitea!...
»Oŕa, gaurkoz, neri beŕeun musu zor...»

* * *

Leio-gañeko iñarari,
oná zein oar zioskan, ezin obeak,
txolaŕe lotsagabeak,
biurki eragiñik begiari:

«Ikus dun ori, laguna?...
»Ez din, oŕatik, oŕetxek yaso makala,
»edeŕez ain motza dala...»
(Zozoak beleari..., dakiguna).

Tembló de placer el pájaro. Zambúllese en el bebedero, sacúdese el agua, y vuela, loco de amor, hacia la roja boca que le ha llamado.

– Vuela, mi amorcito; vuela ligero en derredor de mí, que mi mano está presta. Más aprisa. ¡Así, así!... ¡Ay! Te tiro manotadas y no puedo cogerte... ¡Malo! ¿Pararás? Ven. ¡Ah, por fin caíste! Anda, toma un beso; anda, toma otro... ¡Quisiera comerte, cariño!... Pero, mira; ya me debes doscientos...

* * *

Y hé aquí las apreciaciones, sin desperdicio, que el desvergonzado del gorrión, guiñando maliciosamente un ojo, dirigía a la golondrina, moradora arriba de la ventana:

– ¿Has visto eso, compañera?... ¡Pues digo si tiene aceptación el amigo!... Y eso que, de hermosura..., bien poco ha qué mostrar... (Decía el tordo al cuervo..., etcétera) (1).

(1) La reticencia refiérese al refrán vasco «Zozoak belcari ipurbeltz». (Dijo el mirlo al cuervo *culinegro)*. Equivalente a:

«Dijo la sartén a la caldera:
quita allá culinegra».

II

Udâ yoan da. Marduldu zaizka mordoak
matsondoari. Beñola,
— egari mozkoŕa — yo du kaiola
gazteenik ildako ostoak.

Agur, iñarok... Ai, zuen kabi goxoa
beŕiz beterik daneko!...
Ai, zeñen luze zuen uŕeneko
maitaldiaren beroa!...

Egunak iges, ta goiz bat, zuriz yantzia,
dar-dar yaio zan... Negua.
Zertan ago, gogo miñak puztua,
zer dala-ta itun, txoria?...

Oar, baña, non datoŕen ire maitea!
Ene!... zerk, ordea, zimur
eragin ezpañei?... Ene!... nork lapur
begien iŕipaŕea?...

Leio-kaiolak zabaldu ditu, bat-bana...
Sartu du Negua'k sudur
ozpeldu-zoŕotza. Txoria, beldur,
ega da maiteagana...

II

Ha pasado el estío. Maduraron los racimos de la cepa. Un día – como un ebrio volador – tocó la jaula una de las primeras hojas que morían.

Adiós, golondrinas... ¿Cuándo volveré a ver poblado vuestro nido muelle? ¡Ah, qué lejos se presiente el calor de otra amorada vuestra!

Pasaron más y más días, y, por fin, trémula, nació una mañana vestida de blanco... Invierno... ¿Qué haces tú ahí, pájaro, esponjado de tristeza y sombrío?

Mas..., repara allá: es tu amada, que viene... Pero..., ¡ay! ¿qué tendrá, que así frunce los labios?... ¿Quién, de los ojos hurtóle el sonreir?...

Abrió, una por una, la ventana y la jaula... El invierno asomó al punto, adentro, su nariz afilada, hecha un sabañón... El pájaro, tímidamente, rompió a volar hacia su amada.

Ai, aren esku, laztankor igaz izana.
Lore-oria arantz biur!...
Lengoa ditekek, zakarki edur-
-pera egotzi auena?

Negargaria! Leio-ostean itzalia
bizitz-bizitza uan gara!...
Ire eguzkiaren ilunabara!...
Betiko il argi guztia!...

Ega, bai, ega! Oro zegok otz, bai bakar;
oro, bai, ene!, zuria!...
Non yana, ta aterpcrik non, txoria,
bila aren adarik-adar?...

* * *

Gose-nekeak auldurik, elur-gañean
etzin da; ta arin, geldiak
deituta, gogapen negargariak
egotzi zaizka taldean.

Iñoiz ikusi dezute tximiritarik,
iltzeko yausitakoan,
xomoroek yana nola dagoan,
azkenak egin eziñik?

¡Ay, manos tuyas, antaño acariciadoras! ¡Que los pétalos puedan volverse espinas! ¿Son aquellas mismas, estas de ahora, que, brutalmente, han expulsado al pájaro, bajo la nevada que cae?

¡Desdichado! Tras la ventana viste apagarse la llama qne era vida de tu vida. Viste el crepúsculo de tu sol. Para tí, por siempre, la luz ha muerto.

Puedes volar sin descanso... Todo lo encontrarás solitario y helado: todo blanco... ¿Dónde has de hallar qué comer, dónde refugio, por más que los busques de rama en rama?



Abatiéronlo la fatiga y el hambre, y cayó sobre la tierra. Rápidamente, por la inacción convocados, embístenle multitud de dolorosos pensamientos.

¿Acaso no habéis visto, cuando una mariposa cae para morir; no la habéis visto que, a dentelladas, le atacan los insectos de la tierra, y yace sin poder acabar su vida?

Bero gozoa! Yantoki alez betea!
Laztan eztiak goizean!...
Agur, agur!... Oi! Eriotz-auŕean,
etsipenaren nekea!

Iñoiz kabirik egin-gabeko gaxoa!
Eluŕetan, or, txoria,
epelak ogetuta, ire kabia...
lênen bai azkenengoa!...

* * *

Elur ta elur: eluŕa, eten-gabean:
iluntze beldurgaŕia!...
Astindu nai... Ega nai... Ai, txoria!,
eluŕa beti soñean!

* * *

Aleak une, diardu, nagiz, Aldia'k
yalkitzen artaburua...
Agurea baita, dar-dar eskua,
logura, beŕiz, begiak...

---

Il nai, ezin il... Gauaren azkengabea!

* * *

Eguna?... Bai, nekezkoa;
ur-esnea baño motelagoa...
Eguna noizbait, ordea!

¡Oh, tibio calor! ¡Oh, comedero, bien provisto de miés! Y aquellas dulces caricias de todas las mañanas... ¡Adiós para siempre! ¡Ay, qué triste es la desesperación al acercarse la muerte!

Tú, pájaro, pobrecito pájaro; tú que jamás hiciste tu nido; hélo ahí, en la nieve labrado por el calor de tu cuerpo... Hélo ahí: ¡tu primero y último nido!

* * *

Nevó, nevó, nevó... ¡Qué espantoso oscurecer! Pretendía sacudirse... Intentaba volar... ¡Pobre pájaro! Siempre presa de la nieve...

* * *

Y Cronos desgranaba perezosamente su mazorca, cuyos granos son instantes... Viejo como es, temblábale la mano y caíansele de sueño los ojos.

---

¡Deseando morir, y sin poder abandonar la vida!... ¡Oh, noche interminable!

* * *

¿De día?... Sí. ¡Cuánto había tardado! Y más turbio era que el agualeche... Pero al fin: ¡era el día!...

Il-aureko indar-    -ondarak zuzpertu?... Beintzat,
txoria leioruntz doa,
mozkorki, – alatsu udazken-ostoa –
egun nekez yaioaz bat.

Mokoz bai egoz    otoikor astindu ditu
leiarki lausoz beteak...
Ai, beñere ezpa'lu zorigabeak
begiaz lañoa uratu!

Margoz, bikaña;    eztariz, abeslaria;
bigunki, baru gozoan,
zataretsiaren kaiolatxoan,
lo dago beste txoria...

Erukaria!    Bein eta beriz, alena!
Nondiko gezi zorotza
bat-batez eldu zaik egan, biotza
yosteko guztiz zuzena?...

* * *

Leio-arian    yausi zan; lauso begiak,
zutiturik erotxoak:
beatzak biuri, zabal egoak,
aroturik egakiak...

1925.

¿Reanimólo la reacción que precede a la muerte?... Sea como fuere, hélo ahí volando como un ebrio – semejante a la hoja otoñal – a una con el tardío día, hacia la ventana.

Con el pico y con las alas golpea suplicante los empañados vidrios... ¡Ojalá tu mirada no hubiera logrado atravesar su nube!

En el confortable interior, dentro de la misma jaula del despreciado, otro pájaro dormía sosegadamente, magnífico de color, y de garganta sonora.

¡Desdichado! ¡Infeliz mil veces! ¿De dónde partió el dardo aquél, que volando vino a clavársele raudo y certero en el corazón?

* * *

Cayó en la piedra de la ventana, nublados los ojos, tiesas las patitas, retorcidos los dedos, abiertas las alas, hinchado el plumaje...

# Xabiertxo'ren eriotza

*(Nere lênengo Xabiertxo'ren eriotz-egunean: 1925'gko. Lotazilak 24'g.)*

I

Gabon-egun-goizean
Yaun Aita pozik
yaiki, ta aingerutxoak
ofa non bildu ditun,
esanik:

Poztu, ene txikiok,
gaur, afatsean,
aurtxorik edefena
yaiotzekoa baita
lufean.

Apaindu, ta zoazte
guztiok bêra
befi ona zabalduz,
zuen Yaungoikotxoa
gurtzera.

# Muerte de Xabiertxo

*(En el día de la muerte de mi primer Xabier: 24 de Diciembre de 1925).*

I

En la mañana de Nochebuena, habíase Dios Padre levantado muy contento, y, reuniendo a sus angelillos, díjoles:

– Alegraos, pequeños míos, que esta noche ha de nacer en la Tierra el más hermoso de los niños.

Aseaos, y volad todos abajo publicando la buena nueva, a postraros ante vuestro pequeño Dios.

Zenbat zerate, baña?
Bat, bi, iru, amar,
ogei, eun, mila... Gutxi!
Yai ontako, geiago
nik bear!

Entzun: ega lureko
seasketara,
ta aur zoragarienak,
ene maiteok, bertan
aukera.

Masalean laztan bat,
eztiz betea:
eskutik ar, ta abia...;
orela ugalduz zuen
taldea.

Ta, lurbira guztia
egin-ondoren,
yaiez yantziz biotzok
bildu, iñularerako,
Belen'en.

* * *

Zalaparta bizian,
txalo yo ta yo,
Yainko zarari oro
baranoan egatu
zaizkio.

Mas... ¿cuántos sois? Uno, dos, tres, diez, veinte, ciento, mil... ¡Pocos! Más me hacen falta para esta fiesta.

Escuchadme: volad a las cunas de la Tierra, y en ellas elegidme los niños más encantadores.

Un beso en la mejilla, lleno de dulzura: y, asiéndolos de la mano, partid, acrecentando vuestro enjambre de ese modo.

Y, luego que hayais rodeado toda la Tierra, vestidos de fiesta vuestros corazones, congregaos, para el anochecer, en Belén.

* * *

Con ruidosa algazara y aplaudiendo a más y mejor, todos revolotearon en torno del viejo Dios.

Ta, aruntz lagun-eginda
puska batean,
emen datoz beŕiro,
ega-iraulka pozaren
pozean.

* * *

Yaunaren baratzako
ituŕietan
murgildu, ta ari dira
beren buruon eder-
lanetan.

Gertu-ta-gero, uŕezko
txilibitoak
aoratu, ta abia
ziran, zabala aŕotuz
egoak.

Non dira?... Antxe, urdiñaren
sakonenean,
ezer ez duzu ikusten
argizko auts-irakin-
antzean?...

Noratsu?... Iñon ez. Oro
lêngoraturik,
begiak ez du yotzen
urdin baztergabea
besterik.

Y, luego de acompañarle a lo lejos una buena jornada, vedlos regresar, dando al vuelo volteretas, de puro contentos.

* * *

En las fuentes del huerto del Señor se han zambullido, y dan comienzo a la tarea de acicalarse.

Así que estuvieron prestos, lleváronse a los labios flautas de oro, y partieron, esponjando el espacio con las alas.

¿Dónde van?... Allá, del azul en lo más hondo, nada ves, semejante a un hervor de polvo de luz?

¿Hacia dónde?... Ya, nada. Todo volvió a su quietud, y la vista no huella sino el azul sin término.

II

Gabon-egun-goizean,
seaskatxoan,
Xabiertxo gaxoa
gaitzak ito-zoiian
zegoan.

– Zer duk, eguzki oŕek,
gure edeŕena?
Nork min egin, esaidak,
biotz biren zatirik
maitena?...

Itxon! Ustez, arnasa
baretu zaio:
paŕe-antx gozo batek
ezpaintxoak argitu
dizkio...

– Iñoren itz emeak
entzuten ago,
geldi-geldirik eta
bular eztian baño
pozago?...

Ene! Beldur! Ez il, ez,
aŕen, txikia!
Ez yoan, gure poza,
ez, gure biziaren
argia!!

## II

En la mañana de Nochebuena, estaba en su cuna el pobre Xabiertxo, y la enfermedad lo iba ahogando.

Oh, tú, más que nadie hermoso, sol nuestro, ¿qué tienes? ¿Quién te hizo mal, dime, a tí, lo más querido de dos corazones?

¡Espera! Diríase que el respirar se le ha aquietado... Una dulce sonrisa le ha iluminado los labios...

¿Es que escuchas de alguien tiernas palabras, quietecito y más a gusto que en el pecho sabroso?...

¡Ay de mí! ¡Siento miedo! ¡No te mueras, oh, nó, por piedad, pequeño! ¡No te nos vayas, gozo nuestro; nó, luz de nuestra vida!

Ene! Gure biotzon
erdibitzea!
Nekez arteranoan,
itotako negaŕa
lertzea!...

Ene! Amen begien
negar-obiak
ondoa yo-eziñak
egin ete-ditu Yaun
aundiak?...

Bular yoritik ez aut,
ene!, ikusiko
zalapartan edaten,
gosea aserik baituk
betiko!...

Eguzkiak inguma
bezin maitea;
ala, maiteminduak,
maite-ezpañek ukitu
-lorea!...

Igan ipiñitako
amesak, baña,
auskoŕak ete-ziran,
inguma ta loreak
ez aña?...

¡Oh! ¡Qué partirse nuestros corazones! ¡Qué reventar el hasta entonces a duras penas contenido llanto!

¿Por ventura el Señor poderoso hizo sin fondo en los ojos de las madres los pozos del llanto?

¡Ya, ay de mí, del pródigo pecho no te veré beber bulliciosamente; que tu hambre para siempre se ha saciado!

¡Oh, querido, como del sol las mariposas, o del enamorado la flor que la amada besó!

¿Eran, pues, frágiles, más que las mariposas y las flores, las ilusiones que puse en tí?...

III

– Berandu? – Bai, maitea;
iluntzea den...
Atsekabeak ez din
astiaren neurtzea
yakiten.

– Ixo... Nortzu ditezkek
atarikuok?...
Nor zetorkek, algaraz,
miñagotzera gure
malkuok?

* * *

*(Ataritik).*

*Etxeko-andre ona:*
*kantatzerik nai?*
*yaiotzadunak gera,*
*begirunez beteak*
*zure zai...*

* * *

– Nortzu dituk?... Esaiek
alde-egiteko!
– Goñz argitutako
yaiotzaz, dun sorta bat
mutiko...

III

*(Ella)*. — ¿Es tarde?

*(El)*. — Sí, querida: está anocheciendo... De medida del tiempo no sabe el dolor.

— ¡Calla! ¿Quién va en el zaguán? ¿Quién puede venir de fiesta, a hacer más amargas nuestras lágrimas?

* * *

*(Desde el zaguán)*.

Oh, buena *etxeko-andre:* ¿quieres que cantemos?... Somos *nacimienteros*, que, llenos de respeto, te estamos aguardando.

* * *

*(Ella)*. — ¿Quiénes son?... ¡Diles que se vayan!

*(El)*. — Es un racimo de niños que traen un *nacimiento* iluminado de rojo.

*(Ataritik)*
*Etxeko-andre ona:*
*kantatzerik nai?*
*Belen-zaleak gera,*
*sari-ustez beteak*
*zure zai...*

* * *

– Biyoaz! – Ez, maitea;
begira zaien...
Gurea iñoiz, azita,
oiek bezela ibiltze'
âl-uken!

* * *

*(Ataritik).*
*Etxeko-andre ona:*
*abesterik nai?*
*Gabon-zaleak gera,*
*ezin-etsiz beteak*
*zure zai...*

* * *

– Zuzen diok. Aur Onak
onetsi bitza!
Sartu, mutil edeŕok,
seaska-alderaturik
yaiotza.

Sartu, ta yo, belduŕik
gabe. Gaxoa
lotan dezute, bañan
otsak astindu-gaitza
du loa...

*(Desde el zaguán).*

Oh, buena *etxeko-andre:* ¿nos dejarás cantar?... Somos *beleneros* que, llenos de la esperanza de tu aguinaldo, te aguardamos.

* * *

*(Ella).* – ¡Váyanse!

*(El).* – No, querida... Míralos: igual que ellos anduviera el nuestro, algún día, una vez crecido!

* * *

*(Desde el zaguán)*

Oh, buena *etxeko-andre:* ¿querrás que cantemos?... Somos *nochebueneros* que, sin poder perder nuestra esperanza, te aguardamos.

* * *

– Dices bien. ¡Que el Buen Niño los bendiga! Entrad, muchachos hermosos, y a la cuna acercad vuestro *nacimiento*...

Entrad, y tocad sin temor: el pobrecito duerme, pero su sueño es de los que difícilmente sacude el ruido.

Yo, bai, gaur baita Aur Ona
yaiotzekoa!
Yaiki, biotz autsia,
pozezko yaia baituk
gaurkoa!

Yaiki, gure maiteena
Belen'en baita,
ortzi izartuan zear
ego bigun aŕoek
bultzata!...

Oska baitago, uŕezko
txilibitoaz,
zeuen Gabon-abesti
berberok Belen'en
yo ta yoaz!

Yo, bai, maiteñoaren
oroiz, mutilok.
Gurtu gatzaion Yainko
aurtxoari biziok
eta ilok...

* * *

Aintza goian Yaunari
askigabea;
ta, bere naia ontzat
etsitako lurtaŕoi...
pakea!

1926.

¡Tocad, oh, sí, que hoy ha de nacer el Buen Niño! ¡Y tú levántate, roto corazón, que es fiesta de júbilo la de hoy.

Levántate, que nuestro bienquerido está en Belén, llevado por blandas, esponjosas alas, a través del cielo estrellado.

Que él también tocando está sin tregua en su flauta de oro esas vuestras mismas canciones de Nochebuena.

Tocad, sí, chiquillos, en memoria de nuestro queridito... Al Dios niño adorémosle vivos y muertos.

* * *

Gloria sin término al Señor en la altura; y paz a los hombres que acataron su voluntad.

# Neskatx urdin-yantzia

Udabeŕi, uste-ezik,
arki dut basoan.
Neskatxa da, ta urdiñez
yantzita ziyoan.
Urdiña yazkia, ta
begia areago:
alakorik itsaso
barean ez dago.
Begi eder-goseok,
ase zakidate!,
iñon ezpaiditake
edeŕik, au beste.
Mamia du nâsian
oretua, iñolaz,
Loreil-laño goiztar ta
mafubi-odolaz.
Arbazta igaŕarena
bezin su zolia
Egun'ek biztu dio
yorik ïledia.

## La doncella vestida de azul

Impensadamente, heme encontrado en el bosque a Primavera. Doncella es, y de azul iba vestida. Si azul el vestido, aún más azules los ojos: no le tiene semejante ni el mar cuando está sereno.

Ojos míos, hambrientos de belleza: ¡saciaos por fin!, que hermosa como esa no hay otra. Sus carnes han sido, sin duda, amasadas de niebla mañanera de Mayo, mezclada con sangre de fresa. Al tocar sus cabellos, Día enciende en ellos un más claro fuego que el de la ramilla seca.

Aren oñek ikutzen
ote dute luŕa?
Ezetz diot: ezpaita
malgutu belaŕa.

Biluzik zan basoa
negu-ondaŕean,
neskatx urdin yantzia
bertara danean.
Zebilela, ats epel bat,
usaiez yoria,
dama; ta adar beltzetan
erne da bizia.
Oŕiz-oŕi yazten da
basoa, gozoro...
Bakan-bakanka, lenen...
Saŕi-saŕi, gero.
Eguzki itzulbeŕiak,
(maitari goiztaŕak)
munkatu du basoa,
(munkatu senaŕak)...
Emazte ezkonbeŕia
dala uste basoa...
Aren dardar emea...
Aren par gozoa!

¿Pisan el suelo sus piés?... Diríase que nó, pues que la hierba no se doblega a su paso.

Desnudo el bosque estaba al morir el invierno, cuando entró la muchacha vestida de azul. A medida que pasaba, esparcía un tibio aliento, lleno de fragancias: y despertó la vida en las negras ramas.

Hoja por hoja vístese mansamente el bosque... Poquito a poco, al principio; luego, rápidamente. El sol recien vuelto – matinal amador – ha besado al bosque – beso de marido – . Porque semeja la selva recien casada esposa... Tal es su suave estremecerse; tal es su dulce sonreir.

Ustez, buru gañean
gaua dut, argia,
amaika izar urdiñen
dirdirak yosia...
Ustez, ur orlegiak
nituan oñean,
izaŕok ziralarik
islatzen urean...
Gezur amesgaŕia,
lilurak sortua!
Goien urdiña nuan,
ostoak xêtua;
bêan, beŕiz, uŕezko
yarioz argiak
belaŕean oi-ditun
begibil zoliak.
Marmaŕa dabil goien,
ezin daikezuna
ots ezti dan igeŕi,
ala ixiltasuna,
Bat-batez, eun txoriek
eztaŕiak eten,
ta aberaski zabala
bitxiz yantzi zuten...

Hágome la ilusión de tener sobre mí una noche clara, llena del brillo de innúmeras azules estrellas; y a mis pies hay verdes aguas, en que aquéllas se reflejan... Pero es mentira de ensueño, mentira de fascinación. Lo que sobre mí tengo es el azul, desmenuzado entre las hojas; y, abajo, son los redondos inquietos ojos que la luz, en su áureo filtrarse, suele formar en la hierba.

Percíbese arriba un rumor, que nadie sabría asegurar si es música suavísima, o si no pasa de silencio. Y de pronto, cien pájaros rompen a gorjear, enjoyando espléndidamente el espacio.

Egun-eunez yantzia
bei̇́kusi-naiez,
bira ditut begiak,
bira, baña... ¡iñon ez!
Non da, non da sorgiña,
basoak maitea?
Begiaz dut, alpeŕik,
yo aren bidea.
Yoana zan... Yoana,
neri, biotzean,
kezka beldur-eztia
yosi-ondorean...
Maitetasun-azia:
ene udabeŕia:
neskatx-tankerakoa
ta urdiñez yantzia!...

1927.

Quise contemplar de nuevo a la vestida del luminoso lienzo, y a todas partes volví los ojos sin encontrarla. ¿Dónde estás, dónde, embrujadora, amada de los bosques?... Vuelvo a mirar el camino que llevó... En vano. No estaba ya: había desaparecido, dejándome en el corazón clavada una dulce temerosa inquietud...

Albores de amor... ¡Oh, primavera mía! ..
Forma tienes de mujer, y vas de azul vestida...

# Bultzi-Leiotik

Oi, lur, oi, lur!
Oi, ene lur nerea!...
oi, goiz eme,
pare gozoz ernea!...

Arto musker,
mendi, baseri zârak;
ale goriz
abailduta sagarak:

oro laño
mè batek estalia,
urez oro
eguzkiak yantzia...

Nekazari,
gizandi bat iduri
soroan zut:
beyondeizula zuri!...

Zure bazter,
gurazko aberia,
doa zoro
ta (bertan ni) bultzia...

# Desde el tren en marcha

Oh, tierra, tierra!, mi tierra mía! Oh blanda mañana, nacida sonriendo dulcemente!...

Verdes maizales, montes, viejos caseríos; manzanos que el rojo fruto abruma:

todo velado por una tenue niebla, todo dorado por el sol...

Labrador, parecido a un gigante erguido sobre la heredad: dichoso tú!...

Por tu orilla, mi patria de deseo, corre locamente – y yo dentro de él – el tren...

Oi, enc lur,
ba'ninduzu zerea,
zu landu, ta
zure sariz asea!...

Bañan... ezin:
bêko bear goriak
narama . Agur,
soro, sagar, mendiak!...

1929-Dagonila.



Oh, tierra mía, ojalá fuese tuyo, y cultivándote, me saciaras de tu premio!

Mas..., no puedo. La vida hirviente del llano me arrastra!... Adiós, montes, manzanos, tierras de labor!.



# Paris'ko txolarea

Txolaretxo, txolare,
Paris-erdikoa:
*Bourse*'ko iskanbila
(gizon zoro batzare)
ez ote naikoa
i izutzeko, axolakabe biribila?

Farol itzali baten
txapel-galurera
etori aiz txuxen
apur ostu bat yaten:
batetik bestera,
txapelaren muturak arin dituk gaintzen.

Salto banakin, begi
ernaiak lurera:
ez aiz i makala:
begiraldi luzeegi
gabe, baator bera:
ez, alearen ordez, yasotzera azala.

Kafetxean bainago
astiaren yabe,
zer egin oberik,
(ezer ez gogarago)
muñak urtu gabe,
zerbait, alarik ere, gogo-yolas baizik?

# Gorrión parisién

Gorrión, gorrioncete del centro de París. ¿Ni el rumor de ese cónclave de locos que es *La Bourse*, atrevido impertérrito, puede ponerte espanto?

Llegaste en derechura sobre el capuz de un foco sin luz, mientras comías una migaja hurtada. Y luego, diligente, uno tras otro, todos sus ángulos ocupas.

Con cada salto el suelo enfilas avizor. ¡No eres tú mala pieza! Corto fué tu inquirir, y desciendes veloz. No, por cierto, a llevarte cáscaras sin meollo.

Sentado en un café, dueño a placer del tiempo, ¿qué mejor ni más grata tarea para mí que aquesta? Sin que llegue a licuárseme el seso, juegue el ingenio un poco...

Leioak lauso dira,
eguraldiaren
antzo. Bar̃enean,
giroaren arira,
loxustak egiten
mor̃oi mantal-zuriak daude baztear̃ean.

Begira, bêtik gora,
ber̃iz txolar̃ea.
Keñuka begiak,
irentsi du, gerora
luzatzeka, alea
Esku – (?) – peko guri bat boteaz,... an'tziak!

Paris'ko txolar̃ea:
zertan aiz berezi
nere er̃iko batez?
Azalez, soin-ar̃ea;
bar̃enez, biur̃i;
kideago zaitezten.. , eztakik prantzesez!

Kanpantor̃e xâr̃ean
bata bezin lasai,
bestea da maiztar
*Tuileri* goitar̃ean
Egingo nuke, bai,
angoa lotsa ezetz onuntza ba'nekar.

Nublados los cristales, tal cual el tiempo, veo. Y, del mismo a tenor, duermen por los rincones siestecillas los mozos de níveo mandil.

Mas, cátate que vuelve ya al foco el gorrión. Y al punto, sin demora, con un guiño en los ojos, deglutió su botín. Y, dejando humeante propina, raudo auséntase. (1)

Gorrión parisién: ¿de un gorrión aldeano te distingue algo a tí? Vistes de pardo y es traviesa tu intención... Para más hermanaros... ni aún sabes el francés.

Con igual desahogo sois inquilinos, uno del viejo campanario, el otro de la insigne Tullería. Y apuesto no se encogiera aquél como aquí lo trajese.

---

(1) Hay una reticencia sin traducción posible, y no del todo pulcra por cierto, ocasionada por el hecho de que en *euskera* se llama a la propina «bajo-mano».

Nun-naitar izan-miñez,
ostera, gizona
bai txori baldaŕa!
Allegiñak egiñez
bebil andik onâ:
etxez kanpora beti duk baseŕitaŕa.

Labur: nere burua
Paris'en ikusiz
ain lotu ta arlote,
otoi nizun zerua,
zeatz adiraziz
gizon baño naiago nukela txolaŕe.

1930.

OAŔA: txolaŕe = gorrión.
Garbizaleak alda ditzateke itz banaka batzu onelatsu:
Farol = dizpil (foco, arco voltáico, Neol).
Txapel = ginbail.
Mutur = erpin.
Salto = Yauzi.

Mirad, en cambio, al hombre ¡Qué desmañado pájaro en su perpetuo afán de cosmopolitismo! Vaya, retorne, empéñese... Así que de su casa salió, ¡rústico siempre!

En resumen. Que viéndome en París tan paleto y desgarbado, al cielo quejéme justamente, expresándole cuánto más me holgara de ser gorrión, que no hombre.

# Otartxo utsa

*(Alaba bakar zuenari,*
*aita-alargunak.*

Zumezko otartxoa,
bazteŕean utsik. . .
Noizdanik, gaixoa,
ez duzu lorerik?

Udabeŕiero
baizenkustan ikus
lore-ontzi naro,
zergatik gaur ain uts?. . .

Mendian ari da
kukua kantari;
Basoa ta Itzala
elkaŕen maitari;

mitxeletak, ilkor-
ezik beren ustez,
badabiltza an ta or
lur apaindu gainez. . .

# El cestillo vacío

*(El padre solitario, en memoria de su hija única, muerta).*

Pobre cestillo de mimbre, exhausto y abandonado, ¿desde cuándo estás sin flores?... Si todas las primaveras fuiste bien colmado búcaro, ¿por qué te encuentro hoy vacío?

Canta el cuclillo en el monte, ámanse el Bosque y la Sombra... Las mariposas ilusas – las que créense inmortales – sobre la tierra enjoyada van y revuelan y vuelven...

Zumezko otarñoa:
udaberîa izan
ta, nola, gaixoa,
zaude baxterean?. . .

Yun baita, betiko
yun, aitaren poza!
Loreak biltzeko
ez izaki gauza!

Beso biguin aiek
gogortu baitziran,
ta itzali begiek
gau etengabean!. . .

Zumezko otartxoa;
eraidazu, aren,
uts duzun ondoa.
Ez ote, bederen,

loreño bat âztu
zure sabelean;
aita dadin poztu
bere negarean?

Puesto que es ya primavera, ¿qué te tiene arrinconado, pobre cestillo de mimbre?

Es que para siempre fuese la alegría de su padre.
Es que coger ya no puede flores.

Es que aquellos brazos delicados están rígidos...
Y *apagáronse los ojos en la noche perdurable!*

Cestillo de mimbre, dime si tu fondo está vacío.

Ve si no quedó olvidada en tu seno alguna flor...
Una sola, que a este padre sin consuelo consolara...

Ondar ximelenik
gabe zen otaŕa...
Yaso dut geldirik...
Ari dut negaŕa...

Geroztik, iñoizka,
urbiltzen natzaio:
begira nagoka,
begira, luzaro...
Ta saŕi (gogoan
iduritu bizi)
lore bat, ondoan,
eginik du mami.
Lore bat, goŕia,
mardul, eze, beti;
erts-ezin zauria
odolezko iduri...

Oroitzezko lore,
laztan biotzeko,
itzali den nere
izaŕarentzako.

1930.

En el cestillo de mimbre ni una marchita hoja había. Recogílo quedamente. Mis ojos manaban lágrimas...

Desde entonces, donde guardo mi cestillo voy a veces. Y me paro a contemplarlo, a mirarlo largamente. Y, de pronto – ¡oh, del espíritu vívida alucinación! – surge en el fondo una flor. Una flor surge, encarnada, fresca siempre, siempre viva, como llaga ensangrentada que no se cerrara nunca...

¡Flor de recuerdo, caricia del corazón, ofrecidos a la estrella hermosa mía que por siempre se ha extinguido!

# Agur!

Adiskide kutun, lagun zorigabe,
azpildu-gabeko biotzaren yabe,
onerako zabal, ederak su-bera:
atorkit, Onuzki, gaur oroimenera!

Elkar-ordañaren ezti berdiñaka
bein ta beriz uka maitasunak baitik,
t'ez eskein bizitzak beazuna baizik
(ala baita mikatz sagar bat elduka);
aldegiña aiz urun, lagun biotz-bera,
adi-mugaz aruntz-erbeste itzalera.

Adiskide laztan, eun bider gaxoa:
gogapenak elkar bil-ari meñoa
beñola zaik eten. . . Adi-yauregia!,
yabe dituk, geroz, gaua ta nâsia.

Irudimena uan giara, yoria;
bañan, ega-baldar baitabil txoria
lurera-bearka zauri doanean,
oren antzo zian ark oi, maizenean.
Odol eri batek ezetua iduri,
beltz-ikusbera uan, izukoi, urduri. . .

* * *

# Adios!

Compañero entrañable, infortunado amigo, corazón sin doblez a la bondad abierto, propenso al entusiasmo que la belleza inspira! Ven, Onuzki, hoy a mí: evóquete el recuerdo...

Tú, a quien Amor negó con reiterado encono la miel sin semejante de la correspondencia; tú a quien la vida sólo hizo ofrendas de hiel, cual pudiera una amarga manzana no madura; haste ausentado lejos, al destierro sombrío que tras de las fronteras yace de la razón.

¡Amigo bienquerido, desdichado mil veces! Quebróse un día el hilo sutil que tu pensar ataba... Desde entonces, en el palacio reinan, de tu intelecto, nieblas de noche y confusión.

¡Qué robusta fué y pródiga tu imaginación! Mas voló de continuo con el torpe volar de ave herida que presto derrumbaráse a tierra. Como si emponzoñada sangre hubiera por riego, mostróse siempre lúgubre, espantada e inquieta...

* * *

Gaberik gabëen-gaupean bai'ago;
gaztetzaro-ogitik yakide ninduken
onen onginaia ezpaituk siñisten;
ai, nik âl-ba'nezaik, nik âl (eztiago
loak ar-basoan ilargia baño)
ene oiu au sar biotz ileraño!

Ene oiu au sar ta biotza biztu,
ta itzal-yauregian giz-argia izetu!

Ezin âl-ba'ledi, Yaun eŕukioŕa,
barkatu zaiozu zizukean zoŕa;
ta Argi-Abeŕian ikus âl-nezake
lauso-eziñezko adiaren yabe;
ta âl-bezat, Yaun, otoi, besarka negaŕez,
beste iñon ez ainbat negaŕa dan emez!

1930



Pues que la noche sufres de una atroz privación, y en la amistad no fías de quien partió contigo, a una mesa sentados, el pan de juventud, ojalá yo pudiera, ¡ojalá!, hacer entrar, suave como en el bosque dormido entra la luna, este gemido mío en tu muerto corazón.

¡Entrara en él, volviéralo a la vida y humana luz encendiera dentro de la mansión sin luz!

Mas, si así no ha de ser, piadoso Dios, la deuda perdónale que hubiere ante Tí. Y en la Patria Luminosa yo un día véalo en posesión de razón que ya nunca velará más la niebla, y con lágrimas dulces, tan dulces cual no puede sino allí ser el llanto, abrácelo, ¡oh Señor!...



# Biotzean min dut

(ILETA - ERESI)

*(Amona zanaren eortz-egunean).*

Biotzean min dut, min etsia,
negar ixila darion miña.
Amonatxo bat nun: gaur, enarak
etoŕi-garaiez, aldegiña.

* * *

Eguzkirik ez dute
leiotan zapiak;
aur-yolasik ez dago
gaur zure kalean.
Odeiek lits uŕatu;
itsasoak oŕo.
Gizadi bat geldirik;
gero, bat-batean:

Ots!
Ots!
bizion oñok...

# Duéleme el corazón

## (ELEGÍA)

*En el día del sepelio*
*de la abuela.*

Duéleme el corazón; duéleme con dolor resignado; dolor de llanto silencioso. Quedábame una abuelita. . Hoy, a tiempo que las golondrinas llegan, ella se ha ido.

---

No tienen sol los lienzos tendidos en las ventanas. No hay jugar de niños en tu calle. Las nubes muestran desgarrados flecos; ruge el mar. Un grupo de gentes está inmóvil. Luego, de pronto:

Resuenan, resuenan los pasos de los vivos. . .

Eŕezka bi gizonek
argizai oriak;
gorputza lau bilobok;
atzetik andreak.
Ai, ene lor arin au
zein dudan laŕia!
Besoek ez lan aŕen,
biotzak nekeak...

Ots!
Ots!
bizion oñok...

Mendea ia betea,
ta ain ilaun, gorputz xâr!
Bezak gogoa goien
i bezin ariña,
ta bezat nik nerea,
dei nazatenean,
ezin-itzal-Argiruntz
egatzeko diña!

Ots!
Ots!
bizion oñok...

Doble hilera de hombres, con velas amarillas; el cadáver, que llevamos cuatro nietos; detrás las mujeres. Ah, ¡cuánto me pesa tan liviana carga! Poco se cansan los brazos, ¡pero el corazón!...

Y siguen resonando nuestros pasos...

Casi llevas un siglo encima, cuerpecillo viejo, y ¡puedes ser tan leve! Que tu espíritu more ya arriba, como tú ingrávido; y ¡ojalá al mío, al sonar su hora, lo sea bastante para volar hacia la Luz Inextinguible!

Y nuestros pasos, los pasos de los vivos, resonaban siempre...

Orain larogei urte,
kale poz-gabeok
eguzkiak zitun ta
zure aur-yolasak
alaitzen. Gaur, ariak
ere baitira itzal...,
¡nork lekuskez, ikusi,
urte urdin igesak!

Ots !
ots !
bizion oñok...

Egun zârak yoan ta
beriak etori,
gaur poz biar oñaze,
noiz burni noiz zilar,
zenbaitek ondamendi
baituten katea
lore-sorta bekizu
goi-muñoak zear!

Ots !
ots !
bizion oñok...

. . . . . .

. . . . . .

Ochenta años atrás, el sol y tus juegos de niña ponían regocijo en estas calles. . . ¡Quién viera los tiempos luminosos que fueron, hoy que hasta en sus piedras muestran sombría tristeza!

Resonaban sin cesar los pasos de los vivos...

Que esa cadena que formaron los viejos días y los nuevos, unos con dolor, otros con alegría, tan pronto férrea, como áurea; que esa cadena de la vida, ruina de tantos, sea para tí, a través de los celestiales collados, ramo de flores.

Y seguían resonando nuestros pasos...

. . . . . .

. . . . . .

Bat-batean eten da
bizion ots ori.
Gorputza laga dugu
nunbait. Al-dakit nun!
Bultza naute bar̃ura...,
ñir-ñir aunitz argi...;
ordia-antzo sar nazu,
begi-lauso ta urgun.

Ots !
ots !
enegan, biotz!

Amonatxo! Bakar̃ik
zagoku atean,
otz ta gogor, entzuten
zure azken-Meza!
zer̃aldo-olen artetik
(negu-gaua iduri)
ez al-datortzu, uluka,
aize er̃uki-eza?

Ots,
ots,
enegan, biotz!

De pronto, interrumpióse nuestro propio rumor. Dejamos en alguna parte el cadáver. ¡Qué sé yo dónde! Empujáronme dentro. Temblaban muchas luces. Como un ebrio entré, tambaleándome y nublados los ojos...

Resonábame, resonábame dentro el corazón...

¡Abuelita!... Tenémoste en soledad, ahí a la puerra, helada y rígida, asistiendo a tu postrera misa... ¿Por ventura, como en noche invernal, no llega a tí el viento, aullando despiadadamente por entre las maderas del féretro?...

Y seguía resonándome dentro el corazón...

Begiok ero ditut,
noranai doazkit;
dantza nâsi bat dabilt
irudimenean.
Goruntz egik, biotza:
otoika lasa adi!
Ixila sor ba'dadi
ire barenean!

Ots,
ots,
enegan, biotz...

. . . . . .

. . . . . .

Ordu bete luzea
igaro zan. Noizbait,
beriro lor ilauna
besoek... Urena,
muño baten gañean
uri ixil bat arki...
Poz-oñaze-kateak
emen dik etena.

Ots!
ots!
bizion oñok...

. . . . . .

. . . . . .

Locos tengo los ojos, que escápanseme sin rumbo. Báilame la fantasía una danza de confusión. Álzate a Dios, corazón; desahógate orando, si es que en tu interior puede renacer el silencio.

Resonábame siempre, resonábame el corazón...

. . . . . .

. . . . . .

Transcurrió una larga hora, hasta que por fin nuestros brazos tomaron de nuevo la leve carga... Más tarde, sobre una loma, dimos en un silencioso pueblo. Es aquí donde se rompe aquella cadena de alegría y de dolor.

Resonaban nuevamente los pasos de los vivos..

. . . . . .

. . . . . .

Ol bat yaso ta ikusi
dut musu ximela:
paŕe-antxa, bizirik
ba'lirau bezela:

(Ots !
ots !
ler adi, biotz!)

ordun, ixar bat biztu
du nere gau beltzak.
Begioi malko ixil bat
dadarka darite.
Noizbait itxaro-kabi
biur dan biotzak:

(Ots !
ots !
yauzika, biotz!)

»Agur!, (oiuka dio),
»gorputz ximur maite!
»Agur, amonatxoa!
»Egun Aundirarte!...»

* * *

Levantaron una madera y ví tu rostro arrugado; sonreía, como si aún conservase vida...

(Resuéname, y quiere estallarme el corazón...)

Entonces mi noche oscura encendió una estrellita. Derramóseme temblando, de los ojos, una callada lágrima. Y el corazón, convertido al fin en nido de esperanza:

(Resonando, resonando y saltando...)

«¡Adiós!» (dijo a gritos) «¡Adiós, pobre cuerpecillo querido! Adiós, abuela: ¡hasta el Gran Día!»...

. . . . . .

. . . . . .

Biotzean min dut, min etsia,
zotiñik-gabeko negar-miña
Alatsu txoriak, uda-ondoz,
negua du galazi-eziña.

1930.



Duéleme el corazón... Duéleme con dolor resignado; con un dolor cuyo llanto no tiene sollozos... Como cuando el pájaro, tras del estío, vió llegar el invierno que no podía evitar.



# Zuaitz etzana

Zuaitz bat, urtezua, lur̃era botea...
Zãr̃a izanagatik bazun ark osasun betea!
Ondoan or̃a agiri, zornak ezotua,
aizkora ankeraren ebaki sar̃i-ber̃itua.

Erorkoa bigundu-bear̃ez autsiak,
adar̃etarik zenbait lur ur̃atuan yosiak
Goruntz, luze-luzerik, gañerontzekoak,
otoi er̃uki bekiela zeruko Yainkoak.

Zuaitz lagunak begira agozkik ixilik,
er̃oak dardarati, adaburua geldirik.
Lur̃a naigabez zegok, aizea zinkuruz;
txoriak ur̃un aldegiñik, izuaren izuz.

* * *

Arbaso pakezale agurgar̃i or̃ek
iñorentzat onginaia besterik izan ez dek.
Betidanik, eskale labur, emale eder:
ire bizi guztian, txarkeri bat al-duk ager?

# Arbol yacente

Un arbol añoso, derribado en tierra. ¡Robusta salud era la suya, no obstante su mucha edad!... Muestra su base, húmeda de savia, el corte a golpes reiterados del hacha cruel.

En la tierra desgarrada incrusta varias de sus ramas, que partiéronse al pretender endulzarle la caída. Tiéndense las otras arriba cuan largas son, clamando piedad al Dios del cielo.

En silencio te miran los árboles compañeros, temblándoles la raíz, inmóviles las copas. La Tierra está desconsolada; gime el viento; hanse alejado los pájaros, presa del mayor espanto.

* * *

Patriarca pacífico y venerable, que nunca hubiste sino bien querer para todos .. Ni una sola ruin acción registra tu vida... De siempre fuiste corto en el pedir, y en el dar, generoso.

Eskatu?... Aizeari, laztan bat oxkiro.*
Txoriari, kanta zezala goizetan eztiro.
Andre luřari, zertxo? Ezegai-ťanťo bat.
Zer-eskaturik ez uan, soilki..., gizonarentzat.

Eman, ordea?... Txoriari, abaroa;
aize adiskideari, ots eztirik nun-yoa;
luřari, bustibide ta zimaurkigaia;
ar berberak arki ditek i'gan babes alaia.

Ta gizonari?... Geienořetxek iri zor:
ari ainbat ik emanik etzegok iñun iñor.
Ire itzala, ire eguřa, ire edergařia
ta arnaririk artu-ala, gizonaren zatia.

Azpian duk ikusi aren gorabera:
aurtzaroan yolasti, mutiletan amets-bera;
lan-izerdiak eta ondo-atsedena;
ile-urdintze ta aguretzea; ta azkenik..., azkena.

Bitartean, zuraren biribilkietan,
ainbat mende esku sendoaz idazten iardukan.
Amaika aldiz lurpera gizonek gizonak...
Zuaitza bizkor beti ere zedukan Yaun onak.

* * *

Pediste. . . Al aire, una caricia fresca. Al pájaro, que te cantase dulcemente por las mañanas. A doña Tierra, una gota de refrigerio. Sólo al hombre no pediste nunca nada.

Pero, ¿dar?. . . Sombra de frondas al pájaro. Al amigo Aire, dístele en qué rumorear musicalmente. A la tierra, proporcionástele riego y fertilizante. . . Hasta los gusanos hallaron en tí alegre refugio.

¿Y al hombre?. . . Él fué quien más te debía; nadie se encontrará a quien hicieses más dádivas. Tu sombra, tu leña, tu ornato; y, de tu fruto, cuanto coger pudiera; esa fué su parte.

Todas sus vicisitudes han pasado bajo tí. Vístele juguetón en su niñez; soñador en su juventud; viste el sudor de su trabajo, y su descanso, después; vístele blanquear la cabeza y envejecer; viste, por fin. . . su fin.

Entretanto, en los círculos de tu madera, ibas marcando siglos y siglos con firme mano. ¡Cuántas veces los hombres enterraron a los hombres! . . Mas, el Señor bueno mantenía siempre en pie al arbol.

* * *

Izadiari zizkiok kendu-alak ken...
Aren irentsi-beaŕa ez dik ezerk asetzen.
Laŕeko zezena, oianeko basauntza,
odeietako txoriak. . Oro gizonak eiza...

Azkenik, beartu duk zuaitz zâŕaz ere,
yauregi bat eraikitzeko zutikako ta abe...
Belarpeko txuloa kilkeŕak bai eder,
baña gizontxoa – alegia! – ez izaki kilker!

Ta an datorkik beñola, eskuan aizkorez:
zitalak nai au eratxi, buŕuka koldar-bidez!
Ark yo ta ik ezin baituk burua geriza,
amildu aiz goitik, atereaz lertu-ots gaitza.

* * *

Idiak or. Kate bat lotu dik itzaiak.
Zeŕak, ozen, uŕundik, iŕika-dizkik eŕaiak...

Luŕa ta biok elkaŕi munka zaudete:
ain adiskide zâŕek azken-aguŕa bai neke!

* * *

Ha quitado a la naturaleza cuanto era susceptible de quitársele. Su voracidad con nada se sacia. El toro de las praderas, el ciervo de la selva, las aves del cielo. . .; todo fué presa del hombre.

Y, por fin, sintió la necesidad de tenerte también a tí, viejo arbol, para postes y vigas con qué construir su palacio. . . Bien está que al grillo le parezca hermoso su agujero bajo la hierba; pero, el hombre. . . ¡no es ciertamente un grillo!

Y hélo ahí venir un día con el hacha en la mano; quiere el canalla abajarte en cobarde lucha . . Te golpeó; tú no te podías valer, y, desde la altura, te precipitaste en medio de un desgarrado estruendo.

* * *

Ya están ahí los bueyes. Te ató el boyero una cadena. A lo lejos, la sierra anhela sonoramente tus entrañas.

Os besais la tierra y tú. . . ¡Qué penoso es el último adiós para amigos tan viejos!

* * *

Ba'aramakete, eraman!, zuaitz eroria...
Efukia garaituz, betor nerekoikeria.
Ba'aramakete, eraman!, bestela, mendia
ezpai-nikek geiago begiaren pozgaría.

1930.



Mas..., llévente, arbol caído... Pueda en mí más el egoísmo que la piedad. Llévente, sí, llévente; que, si nó, el campo ya no tendría alegría para mis ojos.



# Urte-giroak ene begian

## I-BIZIA LO

**Otsail-erdi**

Egur ezearen kea
goiak du kolore:
egunaren atariruntz
zauri bat, gordiña,
odol-beaŕean uŕe.
Sakoneko lañoz gora
tontoŕak eluŕez:
itsasoa iduri,
ametsezko ontziez

Bide-ertzean, ez maŕubi
ez belar gizenik.
Otalorea, bakanka,
goiztxo kaŕaxika,
Udabeŕiari deika.
Or pago bat, lerden-aski,
igazko apaingaŕiak
(gaur orbel goŕiak)
oso yaregin nai-ezik,
nola baituten oi
neskazar ezin-etsiak.

# Paisaje de las estaciones

## I-LA VIDA DUERME

**Mediado Febrero**

Tiene el cielo color de humo de leña verde, y, hacia el atrio del día, tiene una herida fresca con oro en vez de sangre. Cumbres nevadas sobre la niebla del profundo: como si fuera un mar, y en él naves de ensueño.

No hay fresas en la orilla del camino, ni hay hierba jugosa. Hay una que otra *flor* de *árgoma* estridente que, por anticipado, llama a la primavera. Hay un haya gallarda, que no suelta del todo sus galas, las de antaño, hojas resecas hoy; como las solteronas duras de resignar. En el zarzal sin

Ostobakandu-sasian
kabi bat, uts, uŕatua...
Aŕu-bêtik eŕekak ots,
euriteak bulartua...

Basora naiz. An-or,
goldiozko ogean,
yoan-elurte gaitzaren
ondaŕak nabari;
kabidun usoak, ala
emazte zûŕaren
zapiak iduri.
Aritzak, eundaka,
aier zazkio goiari,
argi-lênenkia
egaŕi baitute,
arako uŕezko zauria
izanik ituŕi.
Oŕengatik daude
luze-luze egiñik,
artean oñak ilunik,
azken-arbazta-begiez
udabeŕirako
ornitzen biziez.

O, zein aizen eder loa:
eriotzaren anaitzakoa:
bizitzazko urloa!...

1930

hojas, roto, vacío, un nido. En la barranca honda un torrente resuena, que hinchó el largo llover.

Llego al bosque. Esparcidos sobre el musgoso lecho, restos de la reciente gran nevada semejan palomas anidadas o ropas a secar de hacendosa mujer. Cientos de robles tienden al cielo su deseo sedientos, anhelando las primicias de luz cuya fuente es aquella herida hecha de oro. Por eso se los ve tan tendidos y largos, que, a favor de las yemas de sus ramillas últimas, y aún en sombra los piés, para la primavera van absorbiendo vida.

¡Qué hermoso eres, oh sueño! ¡Qué hermoso, pretendido hermano de la muerte: tú, remanso de vida!...

## II-SAGAR-LORE

### Loreil-bete

Anitz egunez, ez gera alaitu
lurtaŕok. Goien sar egin baitu
Euri'k Eguzki giltzapean;
yaun orail eder, legorteen aita,
katez ſoturik egona baita
odei bustien sabelean.

Gaur, oŕa agiri, tarteka, urdiña...
Sor zait baŕuan laŕera-miña;
ta, aspaldi ez-ta, mendi-aldi.
Bete ditzadan argiz begiok;
eten zain-giar lotuegiok;
bulaŕa asetuz noan geldi.

Badut zalantza zein giro izaki;
otzaren âla danentz ebaki;
ikus ezpaitut Udabeŕi...
Baña, bat-batez, gain-bêra, maldan,
moltso zuri bat... Elur ez al-dan,
loreak ote... ¿âl igeŕi!

## II - MANZANO EN FLOR

### En pleno Mayo

Largos días hemos vivido sumidos en tristeza los humanos. Es que Lluvia, allá arriba, puso en prisión a Sol; y el rubio señor hermoso, padre de las sequías, ha estado, cargado de cadenas, en el seno de las húmedas nubes.

Mas hoy, por intervalos, parece un poco el azul. Y yo he sentido dentro una viva nostalgia de campo, y, tras una larga ausencia, vuelvo al monte. Que los ojos se me llenen de luz; y vosotros desperezaos, músculos entumecidos; sáciense mis pulmones mientras subo poco a poco.

Dudo acerca de la estación en que estamos... ¿Pasó el reinado del frío?... Porque, a Primavera no la he visto aún. Mas, de pronto, de arriba abajo en la pendiente, una explosión de blanco... ¿Nieve?... ¿Flores?... Difícil decisión.

